**26.**
Egile on, entzun gure otoitza eta negarra;
bekigu barau aldi hau salbabidezko indarra

Bihotzaren ikertzaile, ba dakizu huts garena;
zureganatzen danari emoiozu parkamena.

Hoben asko dogun arren, damutuoi parka, Jainko;
senda gure gatxak zure izenaren osperako.
Hezi dagigun gorputza neurriz jan eta edanez;
egigun damu-negarra hobenaren bihotz-minez.

Jainko hirukoitz dohatsu, Jainko Bakar zoriontsu:
barau-aldi hau guztioi on dakigula egizu. Amen.

**28.**
Jaungoikoaren hegoenpean: ze bakean! (2)
Indar guztiak dituenaren babespean (2).
Jauna, nik dinot: "Nire babespe dot zuregan;
bihotz guztiaz nago Jaunaren eskuetan."





# GARIZUMARAKO OTOITZAK

**22.**

1) Garizuman Eliza, gaurko Israel barria,
lur barri batetarantz bidean doan herria.
Kantuz ta bihotz alai, oin arin, tente gerria:

**Ai!, noiz sumatuko ete Pazkoako aberria!**

2) Egiptotik urtenda askatasunezko malda:
Lehenaren ametsetan?, hori tristea ez al da?
Jauna, etorri lagun, ken pekatuaren galga.

**Ai!, aurrera ezinean dabilen herri hau salba!**

3) Urrezko irudiak bidertzean tentalari,
helburu motzegien errazkeriazko sari.
Luzatu begirada lur hobeen ameslari:

**Ai!, zu ikusi artean Pazkomugan dizdizari!**



4) Baraua ta limosna alferkargen aringarri
ta biderako indar, Jainko-hitza entzun sarri.
Geurea ukatu ta gogoz lagundu alkarri:

**Bai!, Garizuma hau bedi Jaunarentzat goresgarri!**



**2.**

Jainko gure Aita,
eskerrik asko Garizumaren opariagaitik.
Eskeintzen deuskuzun aukera hau
alperrik galtzeko tentaldian ez gaitezala jausi.



Emoiguzu zure Espiritua,
gure irudimenari hegoak emon deiozan,
gure betiko ohitura hutsak
albo batera itxi daiguzan,
eta, gaurtik aurrera,
seriotasunez hartu daigun Ebanjelioa.

Gure baraua
kontsumismoari ezetz borobil bat izan daitela
eta pobreenganako solidaritzari
bihotz-bihotzeko «baietz» bat.

Gure sakrifizioak
behartsuentzako laguntza
eta sufritzen dagozanentzako
eztidura izan daitezala.

Beti zurekin egon nahi dogu. Gaur hasten gara.

**3.**

Aita, ez gu tentaldira eroan:
ez zaiguzala saldu
salneurri on baten truke,
hileroko soldatearen
edo eguneroko ziurtasunaren truke.

Ez gu tentaldira eroan:
ez zaiguzala ahaztu
lan asko dogulako,
garrantzi handiko gauzetan gabilzalako,

**20.**

Jesus, Espirituaren Gizona,
zirikatua izan zan,
haizeteek astindua, zuhaixka lez,
hurrean, hur-hurrean, ikusi eban
gaitz eta guzurraren sugegorria;
ogiak eskeini eutsoezan tentaldian,
aginte eta garaipen ametsak,
mendez mendeko ospe eta txaloak,
zirikatua santua dana, txiroa, apala.



Gizon eta emakume guztien tentaldia izan eban,
senaren indarra, haragi makala,
buruaren itsukeria eta engainua,
eta kanpotik datozan kontrako haizeak.

Otoitz, barau eta hitzaz gainditu eban Jesusek,
guztion Anaiak, tentaldia,
bere maitasuna, eskaintza betea
eta baiezko aukerea
Aitagan barrituz.

Baina basamortuan jarraitzen dau Jesusek,
borrokatzen daben eta nekatzen diran gizon
eta emakumeagan tentatuta,
zalantzak dabezanengan, gauzen, jazoera gordin,
bidebako eta mingarrien
arrazoiak ulertzen ez dabezanengan tentatuta,
eta haragi eta espiritu sutuen grinak
sentitzen dabezanengan tentatuta.
Neuk tentatu neban, eta nigan da tentatua.

«Aita –errezatzen dau Jesusek-, ene Aita ahaltsua,
eutsi nagizu zure eskuaren indarraz,
Santua dan zure Espirituaren indarraz.
Ez ni tentaldira eroan
eta askatu nagizu, ene Aita, gaitz guztietatik» .



**5.**

Hainbeste gau eta egun ondoren,
hainbeste mende eta historia ondoren,
inork be agortu ezin izan dauan iturri hori
Zeu zara, Jauna.

Zenbat eta gehiago estutu,
ugariago urteten dozu sakon sakonetik.



Zenbat eta egarri eta bero gehiago izan,
hotzago dariozu gure anka artetik.

Zenbat eta gehiago
gu zure bidera hurreratu,
argiago egiten jaku zu gure artean egotea.

Zenbat eta gehiago
gu zure uretan murgildu,
askeago somatzen dogu geure burua
barru eta kanpo.

Eskerrak, Jauna,
gure bizitzari zentzuna emoten deutson
eta gure bidea bizkortzen dauan
Ur Biziaren iturri agortu ezina
izatearren.

(Florentino Ulibarri. Al viento del Espíritu)

**6.**

Hemen nozu, Jauna, bideko itsuaren antzera.
Nire ondotik igaroten zara eta ez zaitut ikusten

Begiak argitara itzita daukadaz eta ezin zaitut ikusi.

**A:** Badakit maite nozuna, Jauna, ona zaralako,
bihotz sentibera dozulako, parkatu egidazu;
garbitu nire barru-barruko pekatuak,
eta jaso nagizu nire eten bako jausteetatik.

**B:** Santu zaran horren aurrean, pekatari sentitzen naz,
eta nire pekatua nigan zuztertuta dago.
Ni, bai, ni!: zure aurka, zure aurka bakarrik egin neban pekatu
eta zure begiek nahigabez ikusi dabe nire bihotz lohia.

**A:** Bai pozgarria Aita zuzen eta zintzoa zarala,
eta txantaje eta alderdikeria barik epaitzen dozula jakitea!
Sentitzen dot; erruaren orbanaz jaio nintzan
eta jaio aurretik ilunpean egon nintzan.

**B:** Adi-adi begiratzen deustazu
eta nire barruan dagoan alderdirik garbiena dozu gustuko
eta gozo-gozo berba egiten deustazu, lagunari lez isiltasunean.
Besarkatu nagizu eta zure maitasunak bihotza aldatuko deust,
izan nire adiskide eta gailurrerantz joko dot.

**A:** Bihurtu egidazu galdu nebana, poztasuna eta alaitasuna,
eta nire bizitzak pozez salto egin dagiala.
Adiskide gara: ahaztu egin neban txarra,
eta, zure adiskidetasunaz, lagundu barritzen.

**B:** Jaio daitela nigan, iturri moduan, bihotz garbia,
eta borondate sendoa emon egidazu, Jauna;
zure aurpegi alaia ikusi gura dot nire ondoan
eta zure indarra lagun izan dagidala beti.

**A:** Emoidazu, arren, zure salbamenaren alaitasuna,
eta dana zugaitik jokoan jarten dauan bihotz zintzoa;
zure bideak zoragarriak dirala esango deutset gazteei
eta zu ezagutu barik pekatu egiten dabenei,
Zu zer zaran 'dastatzeko'.



**7.**

Zuk, Jauna, barrutik ezagutzen gaituzu.
Inork ezin deutsu iruzurrik egin.
Hilobian Lazarorenak lez,
batzuetan, gure bizitzak hil usaina dauko.

Azpikeriaz, norberekoikeriaz eta zuzentasunik ezaz,
eta gure bizitzetan zu alboratuaz,
guk, harroputz halakook,
jainkotzat izan doguz geure buruak.

Baina, izatez, ia konturatu barik,
gure izatea benetako hilobietan sartu dogu:
politak itxuraz,
baina barruan pekatuz eta heriotzez beterikoak.

Gaur, Jauna, beste behin bere,
guganaino heldu zara
Lazaroren hilobira heldu zinan lez.
Biztuera eta bizia zarean Horrek,
dei egiguzu, ahots ozenez, berari lez,
eta lagundu egiguzu gure pekatutik urteten.

Aldatu egizuz,
zeure parkamenaz eta Espirituaren indarraz,
Zeuk bakarrik biztu ahal dozuzan
gure izatearen alderdi hil horreek.
Emoiguzu bizitza, Jauna,
Jainkoaren seme-alaba lez birjaiotzeko,
horri jagokonez bizi izateko
eta edozein heriotza-egoeran
zeure itxaropenaren lekuko izateko.



Izan bere, Biziaren Jaungoikoa zara Zu.
Eskerrik asko, Jauna!

Zatoz eta salbatu gagizuz
gure Jaun eta Jaungoikoa.
Zeu bakarrik zaralako gure egarria
ase daiken Ur Bizia.

**16.**
Barrutik ezagutzen gaituzu, Jauna.
Ezin deutsugu iruzur egin.
Lazarok hilobian lez,
batzutan, gure biziak hil kiratsa dau.

Tranpa, norberekeria eta bidebakokerien bidez,
eta Zu gure bizitzetatik botaz,
jainkotzat hartu dogu geure burua,
harrokeriaz jokatu dogu.



Baina, benetan,
ia konturatu barik,
geure bizitza hilobiratu egin dogu
benetako hilobietan:
itxuraz politak
baina pekatuz eta heriotzaz beteta barrutik.

Gaur, Jauna, beste behin, gugana zatoz,
Lazaroren hilobiraino joan zinanean lez.
Berbizkundea eta bizia zaran Horrek,
oihu egin eiguzu hari lez
eta lagundu gure pekatutik urteten.

Aldatu, zure parkamenaz eta zure Espirituaren indarraz,
gure bizitzako inguru hilak,
Zeuk bakarrik berbiztu daikezuzalako.
Emoiguzu bizia, Jauna,
Jaungoikoaren seme-alaba lez berbizteko,
Jaungoikoaren seme-alaba lez bizitzeko,
zure itxaropenaren lekuko izateko.



>Parkatu egizu, Jauna, gure alkartasunik eza
eta egizu hazi gaitezala maitasunean.



>Parkatu egiguzuz, Jauna, gure indarkeriak
eta bete gagizuz zure bakeaz.

>Parkatu egiguzu, Jauna, gure kemenik eza,
eta haziazo gagizuz itxaropenean.

>Parkatu egizuz, Jauna, gure horkonponkeriak
eta emoiguzu zure Espirituaren indarra.
.../..
> Adorerik ezaren ilunetan murgilduta dagozan
geure begi itsuak aurkezten deutsuguz, Aita,
osatu dagizuzan.

> Euren interesak bakarrik ikusten dituen
geure begiak aurkezten deutsuguz, Aita,
zure errukiaz besteen beharrizanak ikusi ahal dagiezan.

> Zauritzen eta iraintzen daben
gure indarkeriazko begi gogorrak aurkezten deutsuguz, Aita,
baketsu eta errukior izaten ikasi dagien.

> Hainbeste samintasun eta bakardadek eragindako
gure begi ilun eta negartsuak aurkezten deutsuguz, Aita,
zure begiradearen poztasun kutsakorra sumatu dagien.

>Osatu gagizuz gure itsukeriatik. E/.
>Osatu gagizuz gure bihotzaren gogorkeriatik. E/.
>Emon egiguzuz begi barriak eta bihotz barria. E/.
>Gehitu egizu gure fedea. E/.
>Errukitsuagoak eta eskuzabalagoak izan gaitezala. E/.
>Asetu egizu gure egarria ur biziaz. E/.
>Bete gagizuz zeure Espirituz. E/.
>Zure presentziaz beterik bizi gaitezala. E/.

Eta bihotzean zintzilik geldituko jat
betidanik esaten diharduzun eta
nigana heltzen dan
betiko berba bat
«Seme» / «Alaba».

Eta nabarituko dot,
lehenengo aldiz,
amaituko ez dan alaitasun bat.

P. Loidi



**14.**
Jaunak dino:
Nik ez deutset zintzoei deitzen.
Oker dabizanei deitzen deutset.

Zintzoek nahikoa dabe
euren ontasun eta merituekin.
Eta zertarako behar nabe?

Nik oker dabizanei emon deikiet.
Hamaika bider onak izango dirala
agindu ondoren,
pekatu egiten jarraitzen dabenei.

Parkamena eskeintzen deutset,
eta nire konpainia bidean zehar.

Horixe da dodan guztia.
Dodan guztia emoten deutset.
Onentzat ez jat ailegatzen.

Eta Jesusek, plazako zuhaitzera igo
eta hauxe oihukatzen dau:



**10.**
Garizumea,
Jesusi ondo begiratzea da,
bere aurpegiari begiratzea,
bere aurpegierea buruz ikastea,
nork bere egin arte,
norbere historiako bihurtu arte.

Garizumea,
Kalbarioraino igotea da,
basamortutik Pazkoraino ibiltea,
atzera begiratu barik, galdu barik,
ahalegina itxaropenean gainditeuz.



Garizumea,
zeure etxea zabaltzea da,
garbitzen dauan haizeari
sartzen iztea,
eta argitzen dauan eguzkiari
leihoak zabaltzea
distira betean sartu daiten.

Garizumea,
ezpata zorrotza dan
berba ahaltsua entzutea da,
eta Espiritu Sortzaileak bihotza
urratzen eta barri egiten iztea.

Garizumea,
lagunurkoaren bila urtetea da,
eta haren zerbitzura jartea,
ezagutzen dozun
eta beste Kristo batena
izan daitekeen
aurpegieraz jabetzeko.

**1.**
Sinesmen sendoa dabenentzako aldia da hau.
Trebatzeko, ariketak egiteko,
burrukatzeko aldia;
zama arinekoa eta pausu bizkorrekoa.



Bide eta bereizketa aldia,
onbideratze eta konpromiso aldia,
isilean, basamortuko aprobak
eta topaketak egiteko aldia

Bizitza-egitasmoen, erabagien
eta gauzak bertan behera iztearen aldia;
batzuetan, itxuraldeketen aldia.

Paradisua edo agindutako lurra
amesten dauan
apurtutako eta zatitutako
gizadiaren aldia.

Tentaldien, taborren, bihotz-barritzeen,
jausien, zaurien eta itsukerien,
parkamenen, barriztatzeen
eta ur biziaren aldia.
Berrogei egunetan dana!

Ezkutuko sasijainkoen
eta harropuskeriaren zamea askatu daben
eta orain Aitaren errukia eta besarkadak
amesten dabezan
gizaki barrien aldia dogu hau.

(Florentino Uribarri, *Al viento del Espíritu*)



**23.**
**R/ Zure aurpegi bila gabiltza gu, Jauna,**
**zu zaitugu argi eta salbamen,**
**zu, Jauna, biziaren babes.**

Uste on izan Jaunagan eta izan gizon,
jaso bihotza eta Jaunagan sendo egon.
Zelan dan aita bere umeentzat bihozbera,
halantxe da Jauna fededunentzat onbera. R/.

Ez gaitu hartzen gure hobenen neurrietan,
ezta joten ere gure erruen ordainetan.
Berak deutsuz, bai, parkatzen zure hobenak
eta osatzen deutsuz harek zuri gatxak danak. R/.

**24.**
Zabaldu egizuz, Jauna, zure errukizko ateak
eta askatu guregan pekatuaren kateak.
Parka, Jauna zure semeon hutsegiteak.

Parkatu eiguzu, Jauna, egin dogun txarragaitik;
parkatu baita egiteko itxi dogun onagaitik
eta ez gaitezan aldendu zure bidetik.

**25.**



Jauna, zugana gatoz, guztiz damuturik.
Zure aurrean gagoz pekatuz beterik.
Barriro ibili gara galduta Zu barik:
Pekatu egiten dogu zugaz izan ezik.

Zu zara gure poza, gure Jesus ona;
zu gure Salbatzaile, Jaungoiko-gizona.
Zu bakarrik zaitugu gure itxaropena.
Zu bakarrik zaitugu gure zoriona!!!

ito beharrean gagozalako,
ezta gauza haundi eta eder asko egiteko
asmo ederrak doguzalako ere.

Ez gu tentaldira eroan:
ez zaiguzala ahaztu,
Zuri otoitz egin behar deutsugula-ta,
besteak ahaztuz;
edota, besteei erantzun behar jakela-ta,
Zuri otoitz egitea ahaztuz..

Kendu, Jauna, kendu nigandik
zerbait egiteko tentaldia,
dana dalakoa,
Zugaz ahazturik.

**4.**
Biziaren mendira igon nahi dot
eta Jaunaren aurrean bizi,
Taborren antzaldatu gura dot
eta nire etxe eta bizilekua han jarri.



Berba biziak entzun gura dodaz,
Eguzki liluragarriaren argitan itsutu,
maitasunaren lainoan sartu gura dot,
Jaungoikoa esku minduez ikutu.

Baina... ez dago Tabor mendirik,
Jesus da Tabor,
erraiak dituan Jaungoikoaren
aintzaren adierazpen;
eta egunero sufritzen dihardduen
gizon eta emakumeengan
Jesus-Tabor zain dot eta lagun egiten deust.





**21.**
1) Basamortuan zehar dabila
Jainko-herria erromes;
argi, bake ta maitetasuna
dakarren zeruen galdez.
Agindu-lurra Jainkoak deutso
emongo kateen ordez;
penak utzita poztu daitezan
bizi barri baten pozez. R/.



**R/. Zure pozetan goaz, Jerusalen barri;**
**fedeak zuregan dau bere ziment-harri.**
**Maitasunak zu zaitu bere berogarri.**
**Biztu itxaropena zure herriari.**



2) Israel barri kurutzearen
ondoren doa bidari;
bide iluna argitutzeko
hodeia dauka gidari.
Zerua dau hark, Kristok agindu,
erreinu eta lur barri;
beronek deutsoz oinak sendotzen
Jainko-herri barriari. R/.

3) Herriak euren minaren minez
dagoz ezin-egonetan;
bake, poz, argi, egia eta
maitetasun bilaketan.
Entzun zuk hareen negar antsia,
eutsi bideko nekeetan,
larri dabilz-ta zure etxe-bila
fedearen urratsetan. R/.



Baina zure oinkadak sumatzean, zure ahotsa entzutean,
sortzen dan eta zuri dehadar egiten deutsun
iturria langoa nabaritzen dot nigan.
Beharrezkoa zaitut, Jauna.
Zenbat gauza diran itsutzen nabenak!



Jauna, edegi egidazuz begiak zure bizitzara.
Begi garbiz ikusi gura dot zure aurpegia.
Zure Ebanjeliora edegi gura ditut nire begiak.
Aurrez aurre eta zentzunez
begiratu gura deutsat bizitzeari.
Nire bidean, fedea argi-zuzia izatea gura dot.

Ikusi egin gura zaitut
eta bizitzea, atsekabea eta heriotzea
zure argi barik, ondamendia dirala ikasi gura dot.
Anai-arreba bat ikusi nahi dot
gizon-emakume bakoitzagan.
Neure barrurako begiak edegi gura ditut,
nire bizitzearen barrua ikusteko.
Eguneroko gauzetan jarri gura ditut nire begiak
eta zure lorratzak bilatu euretan.

Jesus Jauna, lagundu egidazu ikusten.
Garbitu egizu nire bihotza loi guztitik,
barrutik ikusi ahal dagidan.



Bideko itsuaren antzera,
holantxe bilatzen zaitut.
Ikutu egizuz nire begiak zeure atzamarrekin
eta edegi egizuz argitara.
Orduan, Jauna, esan ahal izango deutsut:
"Sinesten dot, Jauna"
eta nire bidea bideratuta geratuko da.
Eskerrik asko, Jauna!



**B:** Emon bizia, Biziaren Jaungoiko zaran Horrek,
bizi izatea maite dot eta.
Eta horregaz esango deutset danei zugaz dana daitekela.
Zabaldu nire bihotza eta ezpanak zugana, Jauna,
zenbat maite zaitudan esan dagidan.

**A:** Badakit ez zabizala lelokerietan,
eta ez dozula nire txanpon solterik nahi.
Bihotz damutua eskatzen deustazu;
bihotz leial eta zintzoa gura dozu.

**B:** Izan ona nigaz eta besteekin
eta sendotu gure bizitza makalak.
Gure eguneroko bizitza gogorra eskeintzen deutsugu,
Zuk, Jaungoiko gurea, zure altara gainean,
gure dohaina aurkitu eta pozik jaso dagizun.

**DANOK:**
Bihurtu eiguzuz, arren, poza eta alaitasuna,
eta gure bizitzak pozez salto egin daiala.
Adiskide gara: ahaztu, egin dogun txarra.
Zure adiskidetasunaz, lagundu barritzen.



**19.**
Damu dot, Jauna, bihotz guztitik
zu nahigabetu izana.
Ez, ez gehiago, pekaturikan,
nere Jaungoiko laztana.

—Minaren minez, Jesus maitea,
daukat bihotza leherturik,
ikusirikan nire bizitza
dana pekatuz beterik.

—Zure oinetan orain naukazu
begi-bihotzak urtutzen;
barru-barruko negar-saminez
parkazinoa eskatzen.

**8.**
Jaunari esker bakarrik gara fededun...
zuri dagokizu, ostera, bere testigantza emotea.

Jaunagandik bakarrik lortzen dogu itxaropena...
zuri dagokizu anai arreben artean zabaltzea.

Maitasuna Jainkoa bakarrik da...
zuri dagokizu maitatzen jardutea.



Bake-emoilea Jainkoa bakarrik da...
zuri dagokizu batasuna ereitea.

Kemena Jainkoak bakarrik emoten dau...
zuri dagokizu adorebakoa bizkortzea.

Bidea Jainkoa bakarrik da...
zuri dagokizu beste batzuei azaltzea.

Argia Jainkoa bakarrik da...
zuri dagokizu guztien begietan distiratzea.

Bizia Jainkoa bakarrik da...
zuri dagokizu bizi gogoa loratzea.

Jainkoak ezinezkoa dirudiana egiten dau...
zuk ostera egizu ahal dozuna.

Jainkoa nahikoa da...
baina zu hartzen zaitu lagun.

Eskerrik asko, Jauna!

**9.**
>Parkatu egizuz, Jauna, gure norberekeriak,
eta emoiguzu bihotz barri bat.



Zu Biziaren Jaungoikoa zaralako,
eskerrik asko, Jauna!

**17.**
129 SALMOA

**R/. Jaunagan dago errukia**
**harengan askatasun ugaria**

Barru-barrutik zuri dagitsut oihu, Jauna,
entzun, Jauna, nire deadarra.
Begoz adi zure belarriak
nire oihu-eskarira. R/.

Gure erruak gogoan badaukazuz, Jauna,
nor dagoke zutik, Jauna?
Baina parkamena zeugan daukazu,
Israelen Jainko,
zu begirunez zerbidu zaiguzan. R/.



Jaunagan itxaroten nago,
nire barrua haren hitzaren zain dago.
Gau-mutila goiz-argiaren zain dago:
nire gogoa Jaunaren zainago. R/.

Gau-mutila goiz-argiaren zain dago:†
Israel Jaunaren zain holan bego.
Jaunagan dago errukia,†
harengan askatasun ugaria.
Berak utziko dau Israel askaturik,
egin ditun hoben guztietatik. R/.

**18.**

**10.**
Garizumea,
Jesusi ondo begiratzea da,
bere aurpegiari begiratzea,
bere aurpegierea buruz ikastea,
nork bere egin arte,
norbere historiako bihurtu arte.

Garizumea,
Kalbarioraino igotea da,
basamortutik Pazkoraino ibiltea,
atzera begiratu barik, galdu barik,
ahalegina itxaropenean gaindituz.



Garizumea,
zeure etxea zabaltzea da,
garbitzen dauan haizeari
sartzen iztea,
eta argitzen dauan eguzkiari
leihoak zabaltzea
distira betean sartu daiten.

Garizumea,
ezpata zorrotza dan
berba ahaltsua entzutea da,
eta Espiritu Sortzaileak bihotza
urratzen eta barri egiten iztea.

Garizumea,
lagunurkoaren bila urtetea da,
eta haren zerbitzura jartea,
ezagutzen dozun
eta beste Kristo batena
izan daitekeen
aurpegieraz jabetzeko.



Prostitutak
zuen aurretik sartuko dira zeruan!

P. Loidi (laburtua)

**15.**
Zatoz eta salbatu gagizuz
gure artean ikusteko itsutasunetik,
Zugaz batera bidea egiteko alperkeriatik,
Zugandik urrintzeko aitzakietatik.

Zatoz eta salbatu gagizuz
zure berbea ez entzutetik,
gure arrazoi bako zakarkerietatik,
“Egiptoko gizaki zaharra” gustoko izatetik.

Zatoz eta salbatu gagizuz
Idazkiak ulertzeko gogortasunetik,
lehenengo postuak jadesteko borroketatik,
Erreinuko haziaganako mesfidantzatik.



Zatoz eta salbatu gagizuz
erosotasunari lehentasuna emotetik,
besteak ez ulertzetik,
gure norberekeria ezkututik.

Zatoz eta salbatu gagizuz
gure azalekotasunetik,
goiko gauzenganako axolabakokeriatik,
zentzuna galtzetik.

Zatoz eta salbatu gagizuz
asmatu doguzan jaungoikoetatik,
estutzen gaituan oiheriatik,
gure ikuskera txikietatik.

bestea, edozein izanda ere,
nire semea, nire alabea dalako,
neure antz eta irudira egindakoa.

Batez ere txiroen, nagusien,
umezurtzen, atzerritarren
eta babes bakoen alde egin,
Ni Maitasuna eta Zuzentasuna nazalako.

Jaunari esker bakarrik gara fededun...
zuri dagokizu ostera bere
testigantza emotea.



**12.**
Goizero urteten zara balkoira
eta hodeiertza begiztatzen dozu,
itzultzen ete nazan.

Goizero saltoka jaisten dozuz eskailerak
eta zelaitik korrika zatoz,
urrinean antzematen nauzunean.

Goizero berba barik izten nozu,
nireganatzen zara
eta gorputz osoa inguratzen deustazu
besarkada sendo bero batez.

Goizero musika banda bat kontratatzen dozu
eta nire omenez jaiegun bat prestatzen,
mundu guztian zehar.

Goizero esaten deustazu belarrira
udabarriko abotsaz:
«gaur, ezerezetik hasi zaitekez barriro».

P. Loidi



**13.**
Zure aurrera heltzen nazanean
eta aurrez aurre aurkitu zaidazanean
zer esango deustazu, ene Jainko?



«Ederto, seme!/alaba!».

Ni mutu geldituko naz
arrazoi batzuk neroazan.

Zuk eskutik hartuko nozu
eta zure etxea erakutsiko deustazu
astiro-astiro.

Hitzik egitera ere ez nintzan ausartzen.
Ezer esaten ez dozun lez esango deustazu:
«Hemen alkarregaz egoteko
ordua huan, mutil».

Nik aurpegira begiratuko deutsut harrituta
eta zure begiak distiratsu ikusiko dodaz,
Zuk malkoak eutsi ezinik.

Eta nire azalpen eta istorioak
ihes egingo dabe.

Eta nire hutsak
betiko ahaztuta geldituko dira
oroipenaren barrutian.

Eta ura kapitalismoaren aurretik
eta eguzkia turismoa baino lehenago lez,
dohaina zarala konturatzen hasiko naz.

Azken batean,
ulertzen hasiko naz
seme galduaren parabolea!